# ABENDUALDIKO II. DOMEKA
# C urtean

**I. IRAKURGAIA** *Agertuko deutse Jainkoak zure distira.*

Baruk Profetaren liburutik *Ba* 5, 1-9

Jerusalem, erantzi dolu- eta atsekabe-soinekoa;
jantzi Jainkoak betiko emoten deutsun
aintzaren soineko ederra.
Batu zeure gorputza
Jainkoak emoten deutsun zuzentasunaren soingainekoaz
eta ezarri buruan Betikoaren aintzaren koroa.
Agertuko deutse Jainkoak zure distira zerupean bizi diran guztiei,
eta izen hau emongo deutsu behin betiko:
«Bakea zuzentasunean,
Ospea jainkozaletasunean».
Jagi zaitez, Jerusalem, igon gainetara
eta begiratu sortaldera; ikusi zeure seme-alabak,
sortaldetik sartalderaino Santuaren hitzak batuak
eta pozik, Jainkoa hareekaz gogoratu

dalako.
Oinez urten eben, arerioek bultzaturik;
baina Jainkoak aintzatan ekarriko deutsuz, errege-aulkian lez.
Jainkoak agindu dau
mendi garai guztiak eta betiko muinoak makurtzea
eta trokak betetzea, lurra bardintzeko;
Israel seguru etorri dadin, Jainkoaren aintzak gidaturik.
Jainkoaren aginduz,
basoek eta usain oneko zuhaitzek kerizpe egingo deutsoe Israeli.
Pozetan eroango dau-eta Jainkoak Israel,
bere aintzaren argitan,
bere errukiaz eta zuzentasunez.

Jaunak esana.

Erantzun salmoa *Sal* 126 [125], 1-2b. 2c-3. 4-5. 6 (R/. 3)

R/. **Gugaz handikiro jokatu dau Jaunak;**
**hau da poza daukaguna!**

V/. Jaunak Sionen zoria aldatu ebanean,
amesetan lez gengozan.
Barrez bete jakun orduan ahoa,
poz-oihuz mihina. R/.

V/. Jentil-herrietan be esan eben:
«Handikiro jokatu dau Jaunak hareen alde».
Handikiro jokatu dau Jaunak gure alde,
eta pozarren gagoz! R/.

V/. Aldatu, Jauna, gure zoria,
euri-jasek basamortua lez.
Malkoz erein ebenek
pozez batzen dabe. R/.

V/. Negarrez joan ziran,
hazi-zorroa eroanez;
poz-oihuka datoz,
gari-azaoak ekarriz. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Zagoze garbi eta esankizun barik Kristoren egunerako.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 1, 4-6. 8-11

Senideok: Pozik egiten deutsat beti otoitz Jainkoari zuen guztion alde, lankide izan zaituet-eta Ebanjelioa zabaltzeko eginkizunean, lehenengo egunetik orain arte. Ziur nago eginbide on hau zuengan hasi dauanak burutu be burutuko dauala Kristo Jesus etorriko dan egunera arte.

Testigu dot Jainkoa, zein maite zaituedan guztiok Kristo Jesusen maitasun bihotzekoaz. Eta hau da nire otoitza: zuen maitasuna zabalduz joan dadila jakintzan eta sentiberatasunean gero eta biziago, egokien dana bereizten jakin dagizuen. Holan, garbi eta esankizun barik helduko zarie Kristo etorriko dan egunera, Kristo Jesusen bitartez dogun zuzentasunaren emoitzez beterik, Jainkoaren aintza eta gorespenerako.

Jaunak esana.

Aleluia *Lk* 3, 4. 6

R/. **Aleluia**.

V/. Prestatu bidea Jaunari,
zuzendu bidezidorrak hari;
ikusiko dabe gizaki guztiek

Jainkoaren salbazinoa. R/.

**EBANJELIOA** *Ikusiko dabe gizaki guztiek Jainkoaren salbazinoa.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 3, 1-6

Tiberio enperadorearen agintealdiko hamabosgarren urtean, Pontzio Pilato Judeako agintari zala, Herodes Galileako erregeorde, beronen anaia Filipo Iturea eta Trakonitidako erregeorde, Lisania Abileneko erregeorde, eta Anas eta Kaifas abade nagusi ziralarik, Jainkoaren berbea etorri jakon basamortuan Zakariasen seme Joani. Eta, Jordan inguru guztian, bihotz-barritzeko bateoa iragartzen hasi zan, pekatuen parkamenerako, Isaias profetaren liburuan idatzita dagoanez.

«Oihuka dihardauanaren ahotsa basamortuan:
Prestatu bidea Jaunari,
zuzendu bidezidorrak hari.
Bete daitezala haranak,
beheratu mendi eta tontorrak,

bardindu daitezala aldatsak,
zelaitu lur-maldak.
Eta ikusiko dabe gizaki guztiek Jainkoaren salbazinoa».

Jaunak esana.

## HITZALDIA

Abenduaren 2. domeka honetan indar handia hartzen dau profeten irudiak. Goazen irudi hori ulertzera Jainkoaganako gure hartu-emonak hobetzeko.

Onartu beharra daukagu Jainkoari buruzko irudi kaxkarra, traketsa eta itxuragetua daukagula.

Profetek, Jainkoaren izenean, hondamendia iragarriko deutsoe haren Herriari; baina ez Jainkoaren bengantza lez, edo zigor lez, haren bideetatik eta Legetik aldentzean aurkituko dauan egoera lez baino. Errukia eta Maitasuna danak ez dauka bengantzearentzako lekurik, ez inor

hondamenera eroateko gogorik.

Hori argi eukita, Baruk profetak, lehenengo irakurgaian, agintzen deutson zoriona holantxe ulertu behar dogu: Jainkaogana bihurtzen bada, lehengo bidegabekeria izten (lagaten) badau eta zuzentasun bideetan zehar abiatzen bada, Jainkoaren ondasunak, egoera zoriontsua, aurkituko dau.

Baina zeozerk eragiten deutso hari —eta baita geuri ere— beste era batera uste izatea eta zeharkako beste bide horreetan abiatzea…

Ebanjelioan Itun Zaharreko azken profeta aurkitu dogu oihuka. Haren oihuek Jesus bera ere erakarriko dabe haren eskutik bateoa hartzeraino. Baina Jesus ez da bat etorriko Bateatzaileak iragarten dauan Jainko irudiagaz. Jesusek beste era batera sumatzen dau Jainkoa bere barruan.

Joanek iragarten dauana, Jainkoaren zigorretik ihes egin behar dala da.

Horretarako, okerrerako bideak eta bidegabekeriak (injustiziak) itzi (laga) eta zuzentasun bideak hartu behar dira. Holantxe baino ez dogu saihestuko Jainkoaren zigorra.

Autortu daigun: Joanek emoten dauan Jainko irudiagaz egiten dogu guk bat. Haxe dala egiazkoa uste dogu… bildurrean heziak izan garalako? Ez dagoala hezteko beste erarik urte dogulako? Behar bada. Baina horrela ez dogu ulertuko Abenduak dakarskun mezua; eta barre egingo deutsegu Baruk profetaren berbei; eta beste behin ere, salbazinoa eskatzen ekin arren, salbazinoari uko egingo deutsagu, ihes egiten itziko (lagako) deutsagu.

Senideok: salbazinoa **erregalua** dogu. Jainkoa bera da izan Salbazinoa; maitasuna eta errukia dan lez. Haren ezin dau gugan besterik sortuazo horixe baino.

Jainkoak ez deusku ez geroko ezer agintzen, ez orain ezer emoten. Haren izana daroagu erraietan, eta horixe da

aurkitu, azaleratu eta garatu geikena, Jainkoari gure esker ona agertuz.

Tamalez, beste era batera izan gara heziak. Bateatzailearen oihuetara gagoz makurtuak, eta holan ezin izango dogu Jesusengandik ikasi eta Salbazinoaren altzoan ikusi gure burua.

Salbazinoa ez da geure ahaleginez eskuratuko dogun ezer. Alperreko dira gure ahalegin guztiak. Salbazinoa erregalu dala onartuko bagendu, haren azaleratzean eta garatzean ahaleginduko ginateke, ez haren lortzean; harek behar dauan gure benetako nortasuna geuretuko geuke. Eta horrek, gaur egun loturik gaukezan kate guztiak urratzeko ahalmena, indarra eta adorea emongo leuskiguz.

Bitartean, geurean jarraituz, mundu honek platerrera dakarskuzanen gose-egarri izango gara; eta handik zeozertxo izteak, edo besteekaz alkarbanatzeak, Salbazinoaren zatitxo bat baino ez bada ere emongo deuskula uste izango dogu; eta

horregaz nahikoa dogula.

Baina Jainkoa ez da zati bat. Jesusek, Itun Barriko Profetak, iragarriko deuskuna Aita-Ama da; seme-alabentzat bera dan guztia dana: erregalua doguna.